# KORAPILOAK
## ASKATZE BIDEAN

[ Euskal Herriko
herri mugimenduetan dugun
formazio-ezagutza
askatzailearen mapeo bat ]



Proiektuaren koordinazio, idazketa eta zuzenketa:

Euskal Herrian, 2018ko maiatzean
www.joxemizumalabe.eus
www.bizilur.eus

Laguntzailea:

Diseinua eta ilustrazioak:
Concetta Probanza

Lege gordailua: SS-499-2018

# Aurkibidea

# Sarrera

**Zertarako egin dugu TXOSTEN HAU?**

Txosten honen helburua **Euskal Herriko herri mugimenduetan martxan dauden formazio esperientzien inguruko informazioa aurkeztea** da. Zorionez hamaika dira egun ditugun formazio politiko esperientziak, edo bestera esanda, herri ezagutzen eraikuntza kolektiboak, eztabaida, tailer edota ikastaro kritikoak, formazio askatzaileak...

Guretzat, formazio askatzailea (trans)formazio sozial eta politikorako haziak ereitea ahalbideratzen duena da: pedagogia emantzipatzailea erabiliz, herri-heziketaren bidez, elkarrekin ikasiaz, jakintzak sozializatuaz eta ezagutzaren eraikuntza kolektiboan arituz. Halere, gure asmoa ez da definizio itxia ematea.

Honen eragilea Joxemi Zumalabe Fundazioaren Murtxikatuz taldea izan da. Talde honek herri mugimenduetan sortzen diren jakintza eta ezagutza kolektiboei ikusgarritasun eta errekonozimendua ematea du helburu nagusi. Honez gain, herri mugimenduetan dugun formazio politikoa berrezaugarritzea du xede. Horretarako, hemengo eta bestelako herrialdetako formazio proposamenak ezagutzea beharrezkoa iruditzen zaigu, ondoren eta eragile anitzen artean, formazio politiko askatzailearen inguruko informazioa zabaltzeko eta honen inguruko eztabaida (ber)pizteko.

Hortaz, talde honek 2018 urtarrilean **galdetegi bat diseinatu zuen** eta Euskal Herriko hainbat eragileei bidali egin zitzaien formazio esperientziak non dauden, zelakoak diren, formazioaren bueltan nola antolatzen garen, zeintzuk diren bakoitzaren erronka eta korapiloak... jakiteko. Guztira, 136 eragilek jaso zuten, euskaraz eta erderaz, eta otsaila erdi arte izan zuten erantzuteko denbora. **Hogeita hamazazpi eragilek** erantzun dute, eskerrik asko egin duzuen ahaleginagatik! Orokorrean oso erantzun anitzak eman dituzue, batzuetan galderak era diferenteetan ulertu direlako, besteetan, esperientziak beraiek oso anitzak direlako.

Jaso dugun informazio guzti hau denontzat eskuragai dago jarraian, **ez da ezer itxia**, hots, zabalik dagoen analisi bat da. Hain zuzen ere, **gure asmoa eragile gehiagoengana heltzea delako, denok batera eztabaidatzeko, elkarrekin ikasten jarraitzeko eta, nahi duenak, Murtxikatuz taldearen dinamikan txertatzeko.**

**ZER AURKITUKO DUZUE txosten honetan?**

Lehenengoz, informazioa jasotzeko bidali zen galdetegia erantzun zuten eragileen zerrenda bat aurkezten dugu, eta eragile hauen ezaugarri komunak. Honekin hobeto ulertuko dugu informazioa nondik datorren eta noraino iritsi garen.

Gero, eragile hauek beraien formakuntzei buruz kontatu dizkiguten hainbat datu aurkezten ditugu, irudi orokor bat osatzeko asmoarekin. Irudi honetatik mugimenduen garaipenak, erronkak eta puntu nagusienak aztertzen ditugu. Gure ibilbidean guztiok izan ditugu aurrera egiteko korapiloak, baina baita, soka askatzen lagundu diguten tiroi txikiak ere.



Guretzat oso garrantzitsua da **formakuntzaren balorazio atala**, hain zuzen ere, zuen informazioari esker, bidea jarraitzeko, **eztabaidatzeko edo kontuan hartzeko hainbat gai eta irizpide interesgarri identifikatu ditugulako.**

Formakuntza ildo guztietarako komunak diren zailtasunak eta mugak ezagutzeak laguntzen digu hauek gainditzeko estrategiak asmatzen. Eta hauxe da, hain zuzen, prozesu honen helburua: guztion esperientziak elkartrukatzea, elkarrekin ikasi, praktika berriak martxan jarri, aukerak aprobetxatu eta egiten ditugun bideak partekatu.

Beraz, hauxe lehenengo pauso bat da, burutzen ditugun (nahiz eta batzuetan horrela identifikatu ere egiten ez ditugun) formazio politiko askatzaile esperientzia horiek gertutik aztertzeko. Garrantzitsua da esperientzia hauek ezagutzea eta jasotzea, politizatzea eta hausnartzea, ez bakarrik hobetze bideak diseinatzeko baizik eta guztion artean komunean ipintzeko: indartuz, sozializatuz... Etorkizun hurbil batean sareak eta saretzeak irudikatzeko ilusioaz.

# PROTAGONISTAK. ZEINTZUK ETA NOLAKOAK DIREN

## 1.1. NORTZUK ERANTZUN DUTE GALDETEGIA?

Poztekoa izan da galdetegiaren oihartzuna, zenbat **eragile anitzek** erantzun duten. Jarraian ordena alfabetikoan zerrendatzen ditugu.

1. taula. **Galdetegia erantzun duten eragile zerrenda**



Galdetegia eragile oso anitzei bidali genien, erantzuteko eta ez erantzuteko arrazoiak eman dizkigute. Erantzun ez dutenen artean batzuei planteamendua edota hiztegia arrotza egin zaie (egiten dutena ez dute formakuntza askatzaile modura definitzen); beste batzuk, nahiz eta interesgarria iruditu, lan dinamika eta momentuagatik ezin izan zuten erantzun; beste batzuk ez zuten premiazkoa ikusi; kasu hainbatetan emailak ez genituen eguneratuta... Azkenean 37k bai, erantzunak bidali zizkiguten eta beraiekin egin dugu analisia.

Erantzun dutenen artean zenbait eragilek formazio esperientzia bat baino gehiago kontatu dituzte, orduan, **guztira hirurogeita zazpi formakuntza esperientzia** jaso egin ditugu.

## 1.2. ERAGILEEN EZAUGARRIAK



Ondoren aipatuko ditugun ezaugarri eta balditzen aurreikustea derrigorrezkoa zaigu; kolektiboek burutzen dituzten formakuntza politiko prozesuen oinarrietan, forman eta garapenean eragina dutelako.

1. grafikoa. **Eragileen ezaugarrien laburpen bat**



**Taldearen «JAIOTZE DATA»**

Taldearen jaiotze data nahiko anitza da, 1956 urtetik 2016 urte arte ditugu. Gehienak 2000 ostekoak dira baina ibilbide luzeak dituztenak, 80. eta 90. hamarkadakoak ere, badaude.

**Taldearen BORROKA/aldarrikapen nagusia/sektorea**

Talde gehienek borroka bat baino gehiago markatu dute. Azpimarratzekoa da zenbatek markatu duten «feminismoa» (%46ek); eta %41ek «kultura» esparruan kokatzen dutela euren burua. Oso eragile gutxik aipatu dute aurreikusita ez zegoen borroka sektore bat (%16ek). Aipatuenak, besteak beste, hezkuntza ez formala, haur eta gazteen aisialdia, internazionalismoa eta trebakuntza politikoa izan dira.

2. grafikoa. **Taldearen borroka/aldarrikapen nagusia/sektorea**



## Taldearen EGITURA

Talde gehienek, %65ek, egitura lokala dute. Hala ere, azpimarratu beharko genuke eragile batzuk «nazionala» Euskal Herrian kokatu dutela eta beste batzuk Estatu Espainolean; gehiengoa Euskal Herrian kokatzen direnak izanik.

**3. grafikoa. Taldearen egitura**






## Taldeen ERABAKI NAGUSIAK

Kasuen %65ean erabaki nagusiak era horizontal batean hartzen dira, kide guztien asanbladan. Bigarrenez, kasuen %30ean, koordinazio edo gerentzia talde batean (ordezkarien bidez) hartzen dituzte erabakiak. Bukatzeko, haien artean nahiko desberdin diren lau eragilek ez dute beraien erabaki gunea aukeren artean identifikatu.

**4. grafikoa. Taldearen erabaki nagusiak non hartzen dira?**



### Taldean LIBERATUAK (soldatapean) dauden eta zenbat

Hogeita hamazazpi eragiletatik, erdiak baino gehiagok (%59ek) liberatuak dituzte. Soldatapean dagoen pertsona kopuruaren bataz bestekoa 8,8koa da. Halere, talde gehienek 6 liberatu baino gutxiago dituzte eta haien artean gehien errepikatzen dena bi liberatu izatea da. Liberatu gehien duenak 50 ditu, beste batek 35 eta hirugarren batek 20. Ez dugu topatu liberatu kopuru aniztasuna (edo liberaturik ez izateak) azalduko duen ezaugarri edo pauta amankomun bat. Formakuntza prozesuen ezaugarri komunak multzokatzen saiatu gara, galdera hauei erantzuteko asmoarekin: Zer, zertarako? Nola? Norekin, norentzat?

5. grafikoa. **Eragileen ezaugarrien laburpen bat**



2.

# FORMAKUNTZA ASKATZAILE ESPERIENTZIETARA GERTURATUZ

6. grafikoa. **Formakuntza esperientzien nondik norakoak**



## ZER•ZERTARAKO

### 2.1. Formakuntza hauen HELBURU NAGUSIAK

Helburuak antzerakoak izan arren, batetik bestera berezitasunak daude, bakoitzak definitzeko bide bat duelako. Helburuak bitan multzokatu ditugu:

Taldeen dinamika barrura begira:

- Pertsona eta kolektiboen autonomia handitu.
- Elkartrukatu, elkar ezagutu.
- Eztabaidaren bidez pentsamendu kritikoa eraiki.
- Proiektuak indartu.
- Ezagutza praktikoak eskuratu.
- Herri mugimenduak ahaldundu.



Taldeen dinamika kanpora begira:

- Artikulazio, aliantza eta sareak sortu.
- Jendartearen eraldaketa sustatu.
- Ideien difusioa eta kontzientziak piztu.
- Jendartearen mobilizazioa bultzatu.

### 2.2. Formakuntza GAIAK

Formazioaren gaitegiari begira, gaiak oso anitzak dira eta zaila egin zaigu taldeetan kokatzen, baina oraingoan ere, bi multzoetan banatu ditugu, nahiz eta intersekzionalitatea aukera gehienetan presente egon:

Taldeen dinamika barrura begira:

- Barne funtzionamendu beharrak: dinamizazioa, partehartzea, ahalduntzea...
- Barne korapiloak.
- Oinarri ideologikoen azterketa eta eztabaida (talde bakoitzak berea).
- Herri mugimenduen antolakuntza eta aliantzak.

Taldeen dinamika kanpora begira:

- Aisialdia, heziketa. Heldu zein umeei zuzenduta.
- Komunikazioa eta teknologia berriak.
- Ezagutza praktiko edo fisikoak: konponketak, agroekologia, bioeraikuntza...
- Feminismoa, teorian eta praktikan.
- Formazio politikoa bera, jakintzaren eraikuntza kolektiboa.
- Intersekzionalitatea, dekolonialismoa, arrazakeriaren kontrako borrokak, klase borroka eta feminismoa uztartuz.

**NOLA•NOLAKOA**



### 2.3. Erabilitako METODOLOGIAK

Gutxi batzuk klase magistralak eta hitzaldiak aipatu dituzten arren, gehienok metodologia partehartzaileak aipatu eta goraipatu dituzte. Beste askotan, ekimen bat baino gehiago dituztenean, euretako bat hitzaldi, jardunaldi edo eztabaidak izaten dira, adituen partehartzearekin edota testuen irakurketekin; eta bigarrena formatu partehartzaileagoa.

Hamaika forma daude: tailer oso praktikoak, irakurketa kolektiboak, jolasak, talde txikietan lan egitea, moderatzaile figura jartzea, rol jolasak, auzolanak, bisitak beste esperientzia batzuk ezagutzeko, Ikerketa Ekintza Partehartzailea, metodologia feministak... Hala ere, gutxi batzuk dira haietako batzuk konbinatuz (esnatze jolasa, azalpena, praktikoa, talde lana eta balorazioa adibidez) ibilbide metodologiko osoa planteatzen dutenak.

Kuriositate moduan, erantzunen artean topatu ditugun bi metodologia orijinal aipatu nahi ditugu. Lehenengoa, forma diferenteak hartuta gune publikoetan egitea: mahai bat ipinita, ikasle plantoa eginez edo kontzertuak antolatuz. Bestea, interneteko tutorialak dira.

Horrez gain, azpimarratu nahi dugu kideen arteko elkartrukea behin eta berriz agertu dela, formatu desberdinetan.

- Aisialdi eta komunikazio taldeek ahots edota idatzizko materialak sortzen dituzte, beraien artean eta jendarteratzeko ere.
- Feminismoaren kasuan, aisialdiko talde batzuetan eta bestelako eragile batean, bizipenetatik eta gorputzetatik hasita egiten dute elkartrueke hau.
- Ikastaro luzeak direnean, batzuk funtzioak eta lanak partaide guztien artean banatzen dituzte.
- Gaiak batzuetan partaideek beraiek jorratzen dituzte, eta gero taldearen aurrean aurkeztu edo dinamizatu.

## 2.4. Formakuntzaren FUNTZIONAMENDUA

Kasuistika interesgarria topatu dugu formakuntza antolatze aldera:

- lantaldeak sortu formazioa gauzatzeko
- liberatuek antolatzen dute
- bizpahiru partaidek egiten dute
- taldeko barne funtzionamenduan txertatuta dago
- asanbladan informazioa txukundu eta handik herrietara zabaldu
- era asanblearioan
- era informalean

Eragile batzuk partaide kopurua mugatzeari garrantzia ematen diote.

Kasu bitan batzorde politiko pedagogikoa sortzen dute, hainbaten artean erabakiak hartzeko eta formakuntzaren antolakuntza gauzatzeko. Horrez gain, esperientzia hauetan partaideak taldeka banatzen dituzte, funtzioak guztion artean partekatzeko asmoz.

### 2.5. Formakuntzaren IRAUPENA

Hemen ere erantzunak mota guztietakoak dira... batzuetan formakuntza ordubetekoa da, behin eta listo. Beste batzuetan urtean behin errepikatzen diren jardunaldiak edo plantoak dira. Batzuk formakuntza iraunkorra planteatzen dute, malgutasuna ere aipatu izan da. Batzuetan 1-2 ordu, besteetan 1-2 aste, edo 1-2 hilabete edota 1-2 urte.

Formakuntza batzuetan astean zehar da, arratsaldez; beste batzuetan asteburuak hartuta... Azken aukera hau aproposena irizten diote taldeak egun batzuetan elkarbizitza egiteari eta bizipenak konpartitzeari garrantzia nahi diotenean.

### 2.6. Erabiltzen diren MATERIALAK

Gehienek aipatzen dute materialaren erabilera tailer eta egunaren araberakoa izaten dela. Hala ere, badira asko erabiltzen diren proiektoreak, powerpoint, hitzaldiak... baita forma guztietako idatzizko materialak ere: esku-orriak, liburuxkak, artikuluak, idazlanak, galdera pizgarriak... Teknologia berriak (interneteko fitxak) eta ikus-entzunezkoak (grabazioak, bideoak...) ere badarabilzkigu. Eta noski: panelak, ariketak, ofiziozko erramintak, kartulinak, papelografoak... Eta maila artistikoan bertsoak, marrazkiak, antzerkia...



### 2.7. Formaziorako PLATAFORMA BIRTUALA

Oso eragile gutxik erabiltzen dute, eta gutxi horiek eragile nazionalak dira gehienbat.

### 2.8. Formakuntzaren FINANTZIAZIOA eta MATRIKULARIK dagoen

Eragile gehienek formakuntza finantziatzeko diru iturriak ez dauzkate dibertsifikatuta; eta batzuk formakuntzak kosturik ez duela esan dute. Horrez gain, finantzazioaren aspektuan ere erantzun anitzak topatu ditugu eta ez dago argi gailentzen den finantzaziorik. Gehien aipatu direnak:

- Taldeak berak jartzen du dirua.

- Autogestioa (zehazki bi eragileek alkohola edo barraren salmenta).
- Diru-laguntza publikoak edo instituzio publikoak (edozein izanda ere, udal, diputazioa edo Eusko Jaurlaritza).
- Partaideen matrikulak.

Eragile gehienek musutruk egiten dute formakuntza, hots, portzentaje handi batean parte-hartzaileek ez dute matrikula ordaindu beharrik. Batzuk, formazio koste txikia ordaintzeko botea jartzen dute. Askotan bolondres egindako lana goraipatzen da.





### 2.9. Formakuntza esperientziaren LURRALDEAREN KOKAPENA

Galdera honekin ez dugu lortu nahi genuen informazioa, lehenengo eta behin, guk ez genuen guztiz asmatu galderaren formulazioarekin; bi erantzun mota zeuden aukeran; esparru fisiko administratibo-politikoa eta hiria/herria dikotomia. Bestalde, eragileek bi era desberdinetan erantzun dute: batzuk bulego fisikoaren kokapena aukeratuz eta beste batzuk intzidentzia esparrua. Hala ere, adierazgarria egin zaigu Euskal Herriko Iparraldean zein Euskal Herritik kanpo kokatzen diren formakuntzak urriak direla. Horrez gain, eragile oso lokalak (norberaren herrian edo eskualdean) dauden bezala, badira Euskal Herria osoan formakuntza ematen dutenak ere.

### 2.10. Formakuntzan erabiltzen den HIZKUNTZA

Esperientzia gehienetan euskara da nagusitzen den hizkuntza. Erdia baino gehiago (34) euskara hutsean dira eta beste hainbatetan (14), euskara gaztelera baino gehiago erabiltzen da. Aldiz, 6 esperientzietan gaztelera baino ez da erabiltzen eta beste bost esperientzietan gaztelerak euskarak baino presentzia gehiago du. Bi esperientziek «beste hizkuntza bat» markatu dute.

### 2.11. Formakuntzako PARTAIDEEN ezaugarriak

Kopuruei buruzko galdera ez dute guztiek bete, zaila zen zenbaki itxiarekin erantzun behar izatea; halere, informazio apur bat lortu dugu. Esperientzia gehienek 20 partaidetik behera dituzte (10-15 partaideen artean haietako gehienak).

Taldeak homogeneoak zein heterogeneoak, ehuneko berrogeitamarrean. Formakuntza esperientzia batzuk publiko konkretua daukate, adibidez herri mugimenduak (eta halere anitza), edo hezitzaileak; beste batzuk jendarte osoarentzat dira, edo auzoarentzat, sindikatuko liberatuentzat, pentsionistentzat, langabetuentzat... Orokorrean formakuntzako partaideak taldearen ideologiarekin bat datoz (nahiz eta batzuetan hau apur bat zabaltzen den).

Formakuntza aukera bat baino gehiago markatu dutenen artean, formazio espezifikoagoetan migrante gehiagoren presentzia azpimarratzen dute. Halere, askok ez dute etnia edo klase sozialari buruz hitz egin, baina erantzun dutenen artean, guztietan txuriak aipatzen dituzte eta baten batek klase ertaina; gutxi batzuk parte-hartzaileen artean migranteak dituzte.

Formakuntzak feminismo gaiak lantzen dituenean emakumeen presentzia igo egiten da. Adin aniztasunak ordea, antolatzaileen adinarekin lotura du.

Dena den, partaide homogeneoak aipatu dituzten hainbatek, barne aniztasuna ere azalarazi dute.

3.

# FORMAKUNTZEN garapena, erronka eta korapiloak

Formazioaren garapena oso diferentea izan da talde eta esperientziaren arabera. Jende gehienak baloratzen du urteak pasatu ahala hobetuz joan direla eta zentzu honetan txertatu dituzten hobekuntzei kasu egingo diegu. Hala ere, beste batzuk ibilbidean gora beherak izan dituztenez, hobetu duten garaietan gertatu direnei begiratuko diegu. Beste batzuk esperientzia bakarra izan dute, ez duelako jarraikortasunik izan, edo oraindik ere proiektua berria delako.

Hobetze aldera gertatu diren ondorioak zerikusia dute jende gehiago eta anitzagoetara heldu izanarekin eta eztabaidak piztu izanarekin.

Horretarako hartu dituzten neurriak edo gertaerak:

- Taldean serioago hartu eta plangintzak egin.
- Liberatuak honi begira jarri.
- Egiturak aldatu, oso bertikaletatik parte-hartzaileagoetara.
- Partaide zirenak dinamizatzaile bihurtu.
- Metodologiak hobetu.
- Gaitegiak anitzagoak egin.
- Hartzaileen perfila dibertsifikatu.
- Praktika berriak barnebildu, gehienbat sistematizazioak eta materialak sortu.

Beraz eta urte hauetan zertan asmatu duten galdetzen dugunean badira errepikatzen diren, eta kontutan hartu beharko genituzkeen, neurri edo ideiak:

Garrantzitsua da **formatua**rekin asmatzea, hau da, aukera anitzak daudela ulertu eta sortzaile lanak egitea, eztabaida eta esperientzien bidez, bide diferenteak probatu eta ondo aztertu kasu bakoitzarentzat zein den formatu egokiena. Hobeto baloratzen dira formatu berritzaileak, espazio publikoak okupatzen dituztenak edo betiko inertziekin amaitzen dutenak. Zentzu horretan, kolektiboek eta formazioetako partaideek bereziki baloratzen

dute horizontalitatea, parte-hartze anitza, deszentralizazioa, bakoitzaren bizipenetatik eraikitzea, alde ludikoaren barneraketa, eta partaideen nahietara moldatzeko gaitasuna izatea. Azken honekin lotuta, askatasuna eta malgutasuna aipatzen dira.

Formatuarekin batera, gaiek edo **edukiek** ere protagonismoa dute. Zentzu honetan kolektiboek batzuetan sentitu dute bereziki asmatu dutela ekarritako hizlarietan, edota edukiak zabaltzeko erabili duten hiztegian. Garrantzitsua da ikusmira zabaltzea eta **helburuak** argi adieraztea, zer bilatzen den jakitea; zentzu berean, dauden beharrak identifikatzea eta hauek jorratzea derrigorrezkoa da.

Horretarako erabili dituzten erramintak ugariak izan dira, orokorrean arazoak praktikotasunera eramaten saiatu dira, elkarguneak sortu dituzte eta aniztasunari garrantzia eman diote.

**Bideak** beraz, badu bere garrantzia, eta kolektibo batzuk horrela irudikatzen dute, bideari duen garrantzia emateak lagundu du prozesuetan; prozesu kolektiboak izatea, elkarrekin lan egiten jakitea eta lantaldearen motibazioa. Honekin batera gainera kideengan ilusioa sorraraztea aipatu dute.

Gu ere arlo praktikora joz, batzuetan garrantzitsua izan da talde baten identifikazioa (adin tarte bat adibidez), komunikazio ona egitea eta kalitatea eskaintzea.

Gure militantzietan eta saiakeratan **korapiloak era osasuntsuan bizitzen ikasi behar dugu**. Hobetzeko aukera bezala irudikatu behar ditugu, eta talde lanean egiten ditugun aurrerapausoak baloratzen jakin behar dugu. Orain arte aipatutakoak horren adierazle dira baina badira kolektiboek bereziki aipatu dituzten neurri batzuk ere. Besteentzat lagungarri izan daitekelako jasotzen ditugu hemen.

- Bilera eta prozesuetan dinamizatzaile rola txertatu.
- Eraginkorragoak izate aldera eta parte-hartzea zabaltze aldera, lantalde txikiak sortu.
- Militante eta liberatuen arteko lan karga orekatu, honek botere harremanetan duen eragina aintzat hartuta.

- Prozesuak eta bere emaitzak idatziz jaso, materialak sortu eta beste batzuentzat eskuragai ipini.
- Gatazkak sortzen direnean, hauen inguruan hitz egin, esplizitatu eta beste aldera ez begiratu.
- Talde barruan elkar ezagutzeko dinamikak abiatu.

**Korapiloak**

Halere, baditugu oraindik ere konpondu gabeko eta behin eta berriz errepikatzen zaizkigun korapiloak, lan honen helburuetako bat kolektiboki oztopo hauei begira jartzea da; guztion artean eztabaidan sartu eta leuntzeko edo konpontzeko bideak irudikatzea.

Korapilo hauek multzokatzen saiatu gara, batzuk espezifikoak eta beste batzuk orokorrak direla jakinik, gehien errepikatzen direnei arreta jartzeko asmoz. Horretarako ZER/ZERTARAKO-NOLA-NOREKIN/NORENTZAT eskema jarraitu dugu.



**ZER•ZERTARAKO**

**Edukietan:**

**Gaiak** aukeratzeak eta berauekin asmatzeak zailtasunak ditu; batzuetan gehiegi nahi dugu, beste batzuetan gauzak bidean ahaztu egiten ditugu. Hemen ere, betiko eskemetatik urruntzen garenean, umezurtz sentitu gaitezke eta gaitegien garapenean gure mugak ikustea baliogarria zaigu:

- Amaierako konklusio argiak batzuetan ez dira posible, eta desiragarriak diren eztabaidatzeke dago. Erantzun majikoen bila datorren jendeak hau ulertzen ez badu ere.
- Interesa piztuko duen gaia eta zerbait berria egitea beti ez da posible.
- Gai teoriko eta jakintza praktikoen arteko orekan galdu egiten gara.

- Guretzat estrategikoak diren ildoak eta kanpoko eskaerak orekatzean zailtasunak ditugu.
- Iritzietan ere aniztasuna nahi dugun arren, batzuetan irakurketa partzial eta kokatuak ditugu.
- Gaiak sakonak direnean, dinamizazioa oso zaila egiten zaigu, bereziki erresistentziak pizten direnean.
- Gorputza oraindik ez dakigu nola sartu edo kokatu.

## NOLA



**Gure barne antolakuntzan:**

Lehen ere aipatu dugunez, **bidea** garrantzitsua da, eta bide horretan **nola antolatzen garen** ikuskatzea. Arreta jarri arren, badira bidean sortzen zaizkigun oztopoak:

- Denbora luzez iraun duten proiektuek dituzten inertziak, egungo errealitatera egokitzeko malgutasuna topatu beharra.
- Maila teoriko eta puntualetan geratu, eraikuntza errealera saltoa egin gabe
- Taldekideen artean sortzen diren tirabirak.
- Konpromezu eta inplikazio maila diferenteak.
- Taldean belaunaldien arteko desorekak, gazteak hurbiltzeko gaitasunik ez
- Koordinazio edo talde motore baten falta.
- Jende gehiagoren beharra sentitu. Are gehiago lan karga handitzen denean, adibidez sistematizazioak edo materialak egiten hastean.
- Formatzaile sare aldakorra, eta honekin batera, jarraikortasun eza.
- **Denbora**ren kudeaketak puntu berezia merezi digu oraingo honetan, berarekin lotutako korapilo ugari identifikatu baitira.
    - Denbora faltagatik gauzak behar bezala antolatzeko eta eztabaidatzeko zailtasunak; batzuetan militanteek lan karga handia dute.

- Erritmo estuegiak markatzen dizkiegu gure buruei eta ezin guztira heldu.
- Saturazio mentala nola kudeatu ez dugu jakiten.
- Denborak eta erritmoak diferenteak direnean nola orekatu.

Betiko egitura eta dinamikekin ohituta gaudenean, gauzak aldatzea ez da erraza izaten. **Parte-hartzea** bermatzeko saiakerak eman arren ez da erraza lortzea, eta epe luzerako ibilbide bezala planteatu beharko genuke. Bide honetan ditugun erronkak aipatuko ditugu:

- Metodologia egokiak bilatu.
- Emakumeen parte-hartzea handitzeko tresnak topatu.
- Aniztasuna bermatu, nola atera «betiko» perfiletik.
- Konpromezu handia eskatzea eta zabala izatearen arteko oreka topatu.
- Gai eta egoera mingarriak ematean hori kudeatzeko erramintak eskuratu.
- Bizitzaren prekarizazioaren aurrean, partaideen jarraipena bermatu.
- Jende nahikoa topatu.



## NOREKIN

**Aniztasunaren kudeaketan:**

Orokorrean aniztasuna handituz doan heinean, behar guztiei erantzuteko zailtasunak topatzen ditugu.

- Eduki eta sakontasunari begiratuta, batzuentzat nahikoa dena beste batzuentzat gutxiegi edo gehiegi suertatu daiteke; jakintza maila ezberdinak daudenean gerta daiteke hau.
- Interesak anitzak direnean helburu guztiei ezin zaie kasurik egin, ez eta espektatiba guztiak erantzun ere.
- Belaunaldien arteko aniztasuna lortzea zaila izaten da, ez dago transmisio gunerik eta zaila da espazio-denbora berdinean adin diferenteak elkartzea.

Honekin batera **aliantzen kudeaketa** dugu, aniztasunak orduan era diferenteetan agertzen dira: dedikazio maila diferenteak, herritarren beharren asebetetzea herri diferenteak batzen garenean, edota ideia diferenteak izatean, kasu honetan batzuetan taldeen arteko gatazkak konpontzeko ahuldadea gertatzen da.

Aliantza edo partehartzea **institucio**ena ere denean, batzuetan konfiantza arazoak suertatzen dira. Adibidez, egiten ari garena eraldaketa soziala eragiten duen edo soilik itxura egiteko jartzen duten udaletxeek. Baina batzuetan elkarlan hau beharrezko modura hartzen da, **finantzaketa** beste korapiloa denean.

## NORENTZAT



Gure lan eta **formazioen sozializazioan** ere oztopoak daude. Gure prozesuen zabalkundea ez da eraginkorra izaten, batzuetan proiektuaren transmisioa ere ez da ondo egiten; gainera sozialki garrantzi gutxi ematen zaio honelako formakuntzari eta handik ateratako ezagutzak jendarteratzea zaila da.

4.

## HAUSNARTZEN JARRAITZEKO

Korapiloak asko dira eta erantzun sinplerik ez dugu. Horregatik bakoitzak bere bidea egitea garrantzitsua den arren, elkartu eta eztabaida batzuk elkarrekin ematea bereziki aberasgarria iruditzen zaigu. Hona hemen Murtxikatuz prozesu honetan zuekin batera eztabaidatu nahiko genituzkeen hainbat galdera, analisi hau irakurri ostean guri bururatzen zaizkigun hausnarketak.

- Orekak bilatzea garrantzitsua da, baina oreka horiek nola topatu? Barne eta kanpo helburuen artean? Nia, taldea eta proiektuaren artean?...
- Denboraren kudeaketa beti agertu zaigun eztabaida da. Nola bermatu guztien partehartzea denbora diferenteak ditugunean? Denbora ez da malgua, nola erabaki zer lehenetsi?
- Metodologia berriekin esperimentatzen ari gara, eta bere mugak ikusten. Nola lortu eredu partehartzaileak izatea utzi gabe, gaien sakontasuna bermatzea, eta disentsua positibo modura lantzea?
- Aniztasunari balioa emanez, batzuetan aniztasun hau ere mugatzen zaigu edo mugatzen dugu. Zeintzuk izan daitezke irizpideak? Nola hobetu dezakegu aniztasunaren kudeaketa?

## GERTAERAK

### Formatua

**EZTABAIDAK**

- Espazio publikoa
- Askotariko parte-hartzea
- Askatasuna

**ESPERIENTZIAK**

- Horizontalitatea
- Deszentralizazioa
- Malgutasuna

### Edukiak

- Hizlariak eta hiztegia
- Helburuak argi adierazi

## BIDEAK

- Prozesu kolektiboa
- Lantaldearen motibazioa
- Elkarrekin lan egin
- Ilusioa sorrarazi

## ZER? ZERTARAKO?

### EDUKIAK

- Gaiak aukeratu
- Teoria ↔ Praktika
- Konklusio argiak atera
- Interesari eutsi
- Taldearen interesak ↔ Kanpoko eragileen eskaerak
- Dinamizazio egokiak landu
- Zer egin gorputzarekin?

## NOLA?

### GURE BARNE AN

- Zenbait konpromezu eta inplikazio maila
- Belaunaldien arteko desoreka
- Koordinaziorik eza
- Formatzaile sare aldakorra
- Denbora

# **FORMAKUNTZEN** garapena, erronka eta korapiloak

## KORAPILOAK

Parte-hartzea zabaldu

Dinamizazioa

Militante eta liberatuen arteko lan karga orekatu

Materialak sortu eta eskuragai ipini

Lantalde txikiak sortu



?

## NOREKIN? NORENTZAT?

### TOLAKUNTZA

Teoria ⟷ Errealitatea

Taldekideen arteko harremana

Jendea erakarri beharra

Erritmo estutegiak

Malgutasunik eza

Saturazio mentala

### ANIZTASUNAREN KUDEAKETA

Zenbait jakintza maila

Espektatiba guztiei aurre egiteko ezintasuna

Instituzioekiko harremana

Finantzaketa

Aliantzen kudeaketa

Belaunaldien arteko aniztasuna

Formazioaren sozializazioa

Ezagutzak jendarteratzea



Espero dugu ematen ari garen gogoeta interesgarria suertatzea; gure asmoa jarraitzea da, korapiloak askatze bidean elkarrekin gogoetatuz. Eragile anitzekin bildu nahi dugu, ez bakarrik momentu puntualetan baizik elkarrizketa eta prozesu jarrai batean; beraz, Murtxikatuz talde honen partaide izateko gonbitea egiten dizugu.

Murtxikatuz taldea **Bor-Bor(K) Herri Jakintzaren Laborategiaren egitasmoaren baitan** kokatzen da eta honen helburua, jakintzaren eraikuntza kolektiboa ardatz, herri mugimenduetan sortzen diren jakintza eta ezagutzen ikusgarritasun eta errekonozimendua egitea da. Hain zuzen ere, **Murxikatuz formazio politikoa berrezaugarritzeko asmoz, hemengo eta hango formazio proposamenak ezagutu nahi dituen proiektua da, formazio politiko askatzaileari buruzko eztabaida (ber)piztu, zabaldu eta jardunaldiak antolatzea helburu duena.**

Gaur egun taldean lau pertsona gaude (Joxemi Zumalabe Fundazioa eta Bizilurrekoak) eta hilabetean pare bat aldiz elkartzen gara (Bilbon gehienetan); eragile berriak datotzen eineran, gure lan dinamikak moldatzeko prest gaude.

**Edozein zalantza edo komentarioa baduzu idatzi lasai asko email honetara:**

**harremanak@joxemizumalabe.eus**

